

# SEI HILABETEKO BALANTZEA

## Etxerat

euskal errepresaliatu politikoen senide eta lagunak
familiares y allegados de represaliados politicos vascos
parents et amis de prisonniers et d'exilés politiques basques

# SARRERA

Etxeratek 2014. urteko lehen sei hilabeteetan espetxeetan eta espetxetik kanpo emandako gertaera nagusien balantzea egin du.

Urte hasieran Etxeratek egindako agerraldi publiko batean, 2013. urteko balantzea egin eta espetxe politikak okerrera egin zuela adierazi zuen. Handik sei hilabetera zoritxarrez ezin dugu bestelakorik esan. Gure senide euskal preso politikoen egoerak okerrera egiten jarraitzen du, eta baita gureak ere. Euskal preso politikoen kasuan, egunerokotasunean espetxeetako bizi baldintzen gogortze bat nabari da. Ez hori bakarrik, albiste ona presoen zenbakiaren gutxitzea den bitartean,  azpimarratu beharreko albiste txarra, presoak geroz eta urrutiago daudela da. Honi guztiari, Arkaitz Bellon euskal preso politikoaren heriotza gehitu behar zaio. Andaluzian dispertsatua, espetxealdian hainbat jipoi jaso eta gero, etxetik 1000 bat kilometrotara eta irteteko hilabete gutxi batzuk besterik falta ez zitzaizkionean. Gure senideek pairatzen duten krudelkeria adibiderik lazgarria.

Senide eta lagunoi dagokigunean, sakabanaketak indarrean jarraitzen du eta, bisitetan hainbat oztopo izaten jarraitzen dugu. Hau da, baldintzen okertzea nabaria da. Eta hau baieztatu ahal izateko hainbat datu ditugu.

Sei hilabeteko honen albisterik onena iheslariek emandako aurrerapauso irmoa da. Urteetako ihesaren ostean eta aurreko urteko ekainean egindako adierazpenari jarraiki, etxera bueltatzen hasi direlako.



# 1.

# DISPERTSIOA

1987an euskal preso politikoen kolektiboari sakabanaketa ezartzen hasi zitzaionetik, gure senide eta lagunak Espainia nahiz Frantziako hainbat espetxetan sakabanatuak izan dira. Beraien arteko harreman guztiz bereiztuz eta bakartuz. Egun ere, 472 euskal preso politikok osatzen duten euskal preso politikoen kolektiboa eta hauek 76 espetxetan sakabanatuta daude. Urteko lehen sei hilabete  hauetan ez da inongo Euskal Herriratzerik egon, eta une honetan Euskal Herriko espetxeetan 5 preso daude soilik.

## 472 euskal preso politiko 76 espetxetan sakabanatuta

- 7 euskal preso politiko gaixo larri espetxe arinduan
- 5 euskal preso politiko euskal herriko 4 espetxeetan
- 364 euskal preso politiko espainiar estatuko 44 espetxetan sakabanatuta
- 99 euskal preso politiko frantziar estatuko 27 espetxetan sakabanatuta
- 5 euskal preso politiko Euskal Herriko 4 espetxetan
- 2 euskal preso politiko Ingalaterran



- Euskal preso politiko bat Portugalen
- 7 preso espetxeratze arinduan, pairatzen dituzten gaixotasun larriak direla eta
- 65 euskal preso Euskal Herritik 1000 eta 1100 kilometrotara dauden espetxeetan
- 131 euskal preso Euskal Herritik 800 eta 990 kilometrotara dauden espetxeetan
- 165 euskal preso Euskal Herritik 500 eta 790 kilometrotara dauden espetxeetan
- 34 euskal preso Euskal Herritik 400 eta 490 kilometrotara dauden espetxeetan
- 69 euskal preso Euskal Herritik 400 kilometrotara baino gutxiago dauden espetxeetan
- 3 euskal preso Euskal Herritik urrun dauden 3 herrialdeetako espetxeetan

Senideok behin eta berriro salatu izan dugu, sakabanaketa senide eta lagunontzat diseinatutako salbuespen neurri bat dela. Senideok urteak daramatzagu asteburu ehunka kilometro eginez, gure gertukoak minutu batzuez ikusteko. Honek ondorio latzak ditu, gogorrenak errepidean bizitza galdu duten 16 senide eta lagunek eta euren gertukoek jasandakoa: heriotza. 2014. urte honetan bertan zortzi istripu izan dituzte 25 senide eta lagunbaino gehiagok bisitara zihoazela edo bisitatik bueltan.

Baina, urteetan zehar egindako bidaia hauek desgaste psikologiko eta fisiko gogorrak eragiten ditu, zenbait kasutan osasuna errepidean uzteraino. Eta guzti honi gastu ekonomiko izugarria ere gehitu behar zaio. Bisita batek gora behera handiak izan ditzake senideontzat, eta urteko lehen sei hilabete hauetan larritu gaituzten zenbait gertaera errepikatu dira zoritxarrez:



## 1.1. Espetxetik espetxerako lekualdatzeak

Urteko lehen sei hilabete hauetan behin eta berriz errepikatu da, guretzat zoritxarrez oso ohikoa den gertaera bat: gure senide eta lagunak espetxez aldatzen dituzte, guri jakinarazteko aukerarik izan gabe.
Eta bat-batean espetxera bisitan joaten garenean, bertan esaten digute jada ez dagoela espetxe horretan.

Horrelako egoeretan ezinegon handia sentitzen dugu, zenbait kasutan, kilometro askotako bidaia eta gastu ekonomiko handi bat egina dituzulako espetxe horretara heltzeko, eta azkenean senidea ikusi gabe etxera itzultzen garelako.

Urteko lehen sei hilabete hauetan 61 destino aldaketa izan dira.

## 1.2. Miaketak

Senideei miaketak egiten jarraitzen dute, argudio zehaztik gabe. Eta zoritxarrez, duela urtebeteko sei hilabeteko balantzean salatu genuen moduan, ohiko miaketez gain ohikoa bilakatzen ari da polizia zakurrekin gerturatzea senideengana, hauek usain gaitzaten. Egoera hauek tentsio une handiak sortzen dituzte, batez ere zakurrak umeengana gerturatzen direnean.

Miaketen eta miaketetan ematen diren zenbait egoera edo gertaeren ondorioz, nahiko ohikoa da senide eta lagunok bisitarik gabe gelditu behar izatea ere. Esate baterako, usaintzen gaituzten txakurrak gure aurrean esertzen badira bisitarik gabe gelditzen gara, edo gertatu izan da ebakuntza baten ondorioz protesi bat duen laguna bisitarik gabe uztea, nahiz eta, eskatzen dituzten mediku agiri guztiak eman espetxera.



## 1.3. Aurrez aurreko bisitak

Hamaika dira aurrez aurrekoak galtzeko espetxe arduradunek erabilitako arrazoiak. Espetxeetaraino bidai luzea egin ostean senideei aurrez aurrekoetara sartzea debekatu diete zenbait senideri. Hona hemen horietako kasu batzuk.

Herrera de la Mancha: Apirilaren 4an Herrerako espetxean Faustino Marcos Alvarez euskal preso politiko donostiarraren anaiari aurrez aurreko bisita egitea debekatu ziotela salatu nahi du, guardia zibilek txakurrekin egindako miaketan "droga aztarnen bat" atzeman zutelakoan.

Egun horretan Herrerara bisitan joandako preso politiko zein sozialen senideek Guardia Zibilek txakurrak erabiliz droga atzemateko egindako kontrola jasan behar izan zuten. Miaketan txakurrek ez zuten drogarik atzeman eta ez zuten inolako keinu berezirik egin bisitariekiko. Hala ere, euskal preso donostiarraren anaiari atzera egin behar zuela esan zioten, berriz ere kontrolgunera itzultzeko.

Sevilla II: Rufino Arriaga euskal preso politikoa bisitarik gabe utzi zuten maiatzaren 31an. Lagunen bisitaren zain zegoen Arriaga baina, espetxeko arduradunek ez zituzten sartzen utzi. 13.00etan zuten bisita Sevillan eta, Euskal Herritik Sevillaraino dauden 900 kilometroak egin ostean eta, 12:35etan iritsi arren, bisita egitea ukatu zieten beranduegi iritsi omen zirelako.

Segovia: Ekainaren 7an, Jon Enparantza euskal preso politikoa ikustera joan ziren lagunek ezin izan ziren bisitara sartu. 918 km egun zituzten joan etorrian.

Huelva: Bis a bis-etako ordutegia aldatu dizkiete. Orain, bisitak baino lehen dituzte. Orain arte, bis a bis-ak bisiten ostean izaten ziren.

Seysses: Martxoaren 21ean Ruben Rivero Campo preso politikoaren bikotekidea agintaritzaren kontrako mehatxuak egiteagatik epaitu zuten Toulousen. Gertakariak otsailaren 7an izan ziren. Neskak bere bisita baimena indargabetua zuela jakin zuenean, azalpen eske espetxeko funtzio-



narioen nagusi batekin elkarrizketa labur bat izan zuen. Horren ostean, funtzionarioak neska salatu zuen. Epaileak erruduntzat jo zuen gaztea eta honako zigorra ezarri zion: 1000 euroko isuna, 600 euroko indemnizazioa salatzaileari eta salatzailearen abokatuaren gastuak ordaintzeko 500 euro.

Seysses: Urtarrilean, Julen Mujika euskal presoaren senide batek bisita galdu egin zuen bularretakoak hiru alditan pitatu ziolako arkutik pasatzean. Kentzea proposatu zuen, baina bortizki erantzun zioten funtzionarioek. Kanpora bultzatu zuten eta bisitara sartzea debekatu zioten, berarekin etorri zen bere senarrak bakarrik sartu behar izan zuen.

## 1.4. Senideekiko jazarpena

Senide eta lagunok bisitetara bidean edo espetxeetan hainbat jazarpen egoera jasan behar izaten ditugu. Eta urteko lehen sei hilabete hauetan ere horrelako zenbait egoera errepikatu dira; hemen adibide batzuk:

Ocaña: Azken hilabeteetan, euskal preso politikoen senide eta lagunen aurkako jazarpena nabaria da. Urtarrilean, jarraitzen zietela konturatu ziren senideak baina, geroztik, egoerak okerrera egin du. Jarraipenei, kontrolak, identifikazioak eta senideen lo lekuetan poliziek eginiko agerpenak gehitu behar zaizkie.

Kontrola: Maiatzaren 23an, Guardia Zibilak Puertoko espetxera joaten zen autobusean zeuden senideak kontrolatu egin zuen Lopidanako gasolindegian. Bidetik aterarazi ondoren, senideak autobusetik atera eta identifikatu egin ditu. Lehen aldiz bisitara joaten zen gazte bat aparte hartu zuten eta galdeketa egin zioten. Kontrola senideentzako propio jarritakoa zen, Gasteizeko industrialde batean.



## Senide eta lagunak

## Dispertsioak eragindako istripuak

**Dispertsioak eragindako azken istripua uztailaren 19an jazo da, hau da, urteko 200. egunean. Denbora tarte horretan zortzi istripu jazo dira orotara. Horrek, batez bestekoa beldurgarria, ankerra uzten du: dispertsioak, 25 EGUNETIK BEHIN, istripu bat eragin du espetxeetara bidean. 8 istripu 7 hilabeteetan; azken istripuan, bakarrik, 6 kolpatu egon direlarik. Orotara, aurten, 25 lagunek baino gehiagok izan du istripua. 2013 urteko lehen sei hilabeteetan sei izan ziren jazo ziren istripuak. Hauexek dira dispertsioak urteko lehen sei hilabete hauetan eragin dituen istripuak:**

Otsailaren 8ko asteburuan, **Harriet Iragi** eta **Raul Alonso** euskal preso politikoen hiru lagunek istripua ukan zuten Castellon II-ko espetxera joaten zirenean, basurde bat atera zitzaienean kotxe aurrean. Kolpatuak suertatu ziren hirurak eta kalte handiak izan zituen kotxeak, baina bisita bururatzea lortu zuten.

Martxoaren 1eko asteburuan, Villabonako espetxean dagoen **Anartz Oiartzabalen** neska lagunak istripua ukan zuen. Kotxearen kontrola galdu zuen Deba inguruan bisita egitetik bueltan zetorrenean. Berak ez zuen zauririk izan, baina kotxea nahiko kolpatua suertatu da. Aurretik beste istripu bat egon zen leku berean eta agian olioa edo gasolina egon zitekeen bidean.

Martxoaren 22an, Topaseko espetxera joaten zirelarik, **Gaizka Astorkizaga**, Txente Askasibar eta Xabier Ugarte presoen bikotekideek istripua ukan zuten Burgos aldean txakur bat errepidera atera zitzaienenean. Ez da inor zauritua izan.

Ekainaren 7ko asteburuan, **Maitane Linazasoro** euskal preso politikoaren hiru lagunek zauriturik gabeko istripua izan zuten Topas espetxera bidean. Istripua, Briviescan, Burgosen gertatu zen, bidera bi orkatz irten eta gero.



Goizeko 06.00ak aldera, Burgosera iristear zeudela, bi orkatz gurutzatu zitzaien autobidean eta, horietako bat jotzea saihestu arren, bigarrena kotxearekin jo zuten. Presoaren lagunek kalte fisikorik izan ez bazituzten ere, kotxea erabat suntsituta geratu zen. Bisita egitera ere ez ziren, gainera, iritsi.

Ekainaren 14an, **Iker Lima** preso galdakoztarraren lagunek auto istripua izan zuten ere Tordesillasen, Cacereseko espetxera bidean zeudela. Istripua, autopibidean gertatu zen, errai erdian zegoen kamioi baten gurpila jo ostean. Autoan zihoazen lagunek ez zuten, zorionez, kalte fisikorik jasan. Ibilgailuak kalte txikiak izan zituen baina, bisitarako bidaiarekin jarraitu ahal izan zuten. Dispertsioak eragindako urteko bostgarren istripua izan da Iker Limaren lagunek sufritutakoa.

Uztailaren 2an, **Oscar Cadenas** euskal preso politikoaren senideak istripua izan zuten Murcia II espetxetik bueltan Kotxean zihoazen bost lagunak ongi atera arren, kamioi batekin talka egin zuen ibilgailuak. Ezbeharra Andoainen gertatu zen, senitartekoek sorterritik Murtziara joan etorrian dauden 2000 kilometroak ia eginda zituztenean.

Uztailaren 4a Puerto III espetxean dagoen **Jesus Mari Etxebarria** "Goierri", Oreretako euskal preso politikoaren lagunek istripua izan zuten aurreko asteburuan, bisitatik bueltan zetozela. Burgos parean zeudenean, kamioi batek kargako pieza bat galdu zuen. Hura galtzean, gasolioko tankean jo zuen. Kolpearekin tankea urratu egin zen eta kamioia autobidean gasolioa isurtzen hasi zen. Horren ondorioz, atzeko hiru kotxeek talka egin zuten. Bisitan zihoazen bi lagunak onik atera ziren

Uztailaren 19an, Alacant-en dagoen Villena espetxera zihoan Mirentxin furgonetak istripua izan zuen espetxera iristear zegoela. Horma bat jo zuen furgonetak. Barruan zihoazen sei lagunek onik atera ziren. 1400 kilometro egin behar dituzte senideek asteburuKro Villenako espetxera iristeko.



2.

# ISOLAMENDUA

Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza euskal preso politi-koen bereizgarri bat da. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), gure senide eta lagunen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Esan bezala, euskal presoen kasuan isolamendua edo mitarda maiz ezartzen den zigor bat da. Baina zenbait kasutan presoak isolamenduko moduluan egon ez arren, bakarrik egoten dira, hau da, beste kiderik edo euskal preso politikorik gabe egoten dira, eta kasu hauetan bakartuak daudela esaten da.

Datuak edozein momentutan alda badaitezke ere, hauek dira ekainaren amaieran bakartuak dauden preso politikoak:

## EUSKAL HERRIA

- **Txus Martin** (Zaballa)
- **Aitzol Gogorza** (Basauri)

## ESPAINIAR ESTATUA

- **Iratxe Yañez** (Almeria)
- **Marta Igarriz** (Castello I)



- **Olga Comes** (Mansilla)
- **Arantza Zulueta** (Puerto III)
- **Jon Enparantza** (Segovia)
- **Iñaki Lerin** (Soto del Real)
- **Miren Zabaleta** (Valladolid)

## FRANTZIAR ESTATUA

- **Arkaitz Agirregabiria del Barrio** (Bdx-Gradignan)
- **Kepa Arkauz** (Villepinte)

## PORTUGAL

- **Andoni Zengotitabengoa** (Monsanto)

## INGALATERRA

- **Raul Fuentes** (Long Lartin)



# BIZI OSORAKO ESPETXE ZIGORRA

# 3.

Frantziar estatuan, bizi osorako espetxe zigorrari dagokionez, ez da urte gehiagorako kopuru maximorik. Biziarteko zigorrarekin ("perpétuité" deitzen duten neurria) kondenatua den preso batek baldintzapeko askatasuna eska dezake 15 urteren buruan (edo "segurtasun kondena" bete ondoan, kondenari neurri hau gehitzen bazaio), baina, erabakia Kondenen Aplikapenen Epailearen esku da, eta honek etengabe uka dezake. Preso sozial batzuek kasik 50 urte pasa dituzte Frantziako kartzeletan.

Euskal preso politikoen artean, 4 neurri honen pean aurkitzen dira gaur egun:

24garren urtea betetzen ari diren **Jakes Esnal**, **Frederik Haranburu** eta **Ion Kepa Parot**, eta 2013an kondenatu duten **Mikel Karrera**. Beste hainbat euskal presori bizi arteko zigorra ezarri diete "de facto" oso kondena luzeen bidez edo eta kondena ezberdinak gehituz.

Espainiar estatuari dagokionez, bizi osorako zigorra ahalbidetzen zuen 197/2006 doktrina indargabetu ostean, gure senide eta lagun ugari 40 urteko espetxe zigorra betetzera zigortu dituztela.

Hau da, bizi osorako espetxe zigorrak aplikatzen dizkiete.



## 3.1. 20 urtetik gorako espetxealdiak betetzen ari diren presoak

Giza eskubideen urraketa izugarria da pertsona batek 20 urtetik gora igarotzea espetxean preso; bai bertan bizi duten egoeragatik eta baita honek dituen ondorio fisiko nahiz sikologikoengatik. 20 urtetik gora espetxean igarotzeak bizi osorako espetxe zigorra suposatzen du, eta zenbait kasutan hil arteko zigorra suposa dezake.

Egun, 472 pertsonen kolektibotik:

35 euskal preso politikoek 20 urte baino gehiago daramatzate espetxean

- Baldintzapeko askatasuna
- Euskal preso politikoei aplikatzen zaien beste salbuespeneko neurri bat da baldintzapeko askatasunaren ukatzea da. Euskal preso politikoek baldintzapeko askatasunean aske egoteko epeak betetzen dituzten kasuetan, salbuespen neurri erantsien bidez bahituak jarraitzen dute eta preso jarraitzen dute bai estatu espainiarrean eta baita frantziarrean ere .

## 3.2. Baldintzapeko askatasuna

Euskal preso politikoei aplikatzen zaien beste salbuespeneko neurri bat, baldintzapeko askatasunaren ukatzea etengabekoa da. Euskal preso politikoek baldintzapeko askatasunean aske egoteko epeak betetzen dituzten kasuetan, salbuespen neurri erantsien bidez bahituak jarraitzen dute eta preso jarraitzen dute bai estatu espainiarrean eta baita frantziarrean ere .



# 4.

# OSASUN ESKUBIDEA

2014 urteko lehen sei hilabeteak bereziki gogorrak izan dira osasunari dagokionean. Urtarrila atxiloketa eta debekuek markatu bazuten, otsaila beltzez tintatu zen Arkaitz Bellon euskal preso politikoaren heriotzarekin. Aste gutxi falta zitzaizkion espetxetik atera eta askatasuna berreskuratzeko. Giza Eskubideak urratzen dituen espetxe politika honen ondorio izan zen Arkaitz Bellonen heriotza; sufrimendua sortzen jarraitzen duen espetxe politikaren ondorio zuzena.

**Arkaitz Bellonek** 13 urte igaro zituen espetxean. Jipoiek, torturak eta eskubide ezak markatutako aldia. Punta puntaraino eraman zuten Arkaitz eta punta horretan heriotza dago. Arkaitzen heriotza bezalakoak izan ziren Xabier Lopez Peña eta Anjel Figueroaren heriotzak, 2013ko lehen sei hilabetekoan hildakoak.

Bere familiak, Euskal Herriari emandako babesa eskertzeko gutuna egin zuen publiko eta, gutun horren atal batzuk berreskuratu nahi izan ditugu Arkaitzek, bere senideek eta lagunek pairatutakoa beste ezer baino hobeto islatzen duelako. Hauek dira gutun horretako lerro batzuk:

Mediku txostenek, momentuz, diotenaren arabera, bapateko heriotza naturala, izan da Arkaitzena. Azken unean, ia konturatu gabe, sufrimendu keinurik gabe hil dela onar genezake agian, baina ez bapateko heriotza izan denik, 13 urte luze hauetan erahil baitute krudelkeria neurtu eta sistematizatu baten bitartez. Arkaitzen espetxealdia ezagututa aldiz, nola onartu bere heriotza naturala dela?



Duela 13 urte ta erdi Arkaitz atxilotu eta torturatu egin zuten. Handik 3 urtera, epaiketan, fiskalak berak froga zuzenik ez zela aitortu arren, kondenatu egin zuten Andoni eta Txominekin batera, leporatzen zizkioten ekintzekin inongo proportziorik ez zuen kondena luze eta neurrigabeko batera. Askatasuna, Arkaitzek beste, inork gutxik maite badezake ere, gu baino hobeto eta azkarrago egokitu zen egoera berrira. Orduan, hasi ginen ulertzen urruntzearen eta dispertsioaren benetako esanahia: Valdemoro, Ocaña, Herrera de la Mancha, Algeciras, Puerto… Gero eta urrutirago beti. Urte bakoitzean 100.000 km inguru egin ditugu astean 40 minutuz ikusi ahal izateko. Ezagutu dugu espetxe aldaketa bakoitzean, hainbat egunetan, non daukaten ere ez jakiteak sortzen duen ezinegona.

Ezin dugu imajinatu, hala ere, berak, nola bizi izan duen, gurasoak bera bisitatzera joan eta errepidean istripu larri bat izan dutela jakitea. Ezin dugu irudikatu, sentitu duen amorrua, mina eta ezina gartzeleroek, jipoitu ondoren, eskuburdinekin, biluzik, egun oso bat ohera lotuta utzi dutenean. Arkaitzekin ikasi dugu, espetxe barruan ere, bere gartzelaldiaren zati handi bat isolatuta egin baitu, inongo kideren babesik eta laguntasunik gabe. Ezagutu dugu zer den, bera bisitatzeko 1000 kilometro egin eta edozein aitzakiarekin bisita ukatu eta elkar ikusi gabe itzultzea. Eta gogorra, jasangaitza egiten zaigu hori guztia eta gehiago,berak bakar bakarrik irentsi duela jakitea. Izan ere, jipoia edo beste edozer izanda ere, bisitan, gure aurrean, beti agertzen zitzaigun indartsu, beti aterarazten zigun irribarrea. Horrelakoxea zen Arkaitz, gogorra baina xumea. Ez gintuen larritu nahi, ez zuen gure bihotza mindu nahi.

Guk badakigu horrek denak hil duela Arkaitz; Arkaitz ez da joan, kendu egin digute. Gartzela politika hiltzaile baten ondorio zuzena izan da gertatu dena, ez “edozeini gerta dakiokeen zerbait”. Kasualitatea baino kausalitatea izan da. Zer gertatuko zaio ba lore bati, lurra, ura eta argia kentzen badizkiote?



**Arkaitz Bellon Blancoren heriotzak euskal preso politikoek momenturo pairatzen duten tentsioa mahaigaineratu du. Espetxeak tentsioa du adierazle nagusien artean. Tentsioa hau du hizpide Jaiki Hadi elkarteak Osasunaren inguruan prestatutako "Kartzela eta Osasuna" dossierrak. Hori dela eta, Hilabetekari berezi honetara lan horretako zenbait kontzeptu ekarri ditugu, egoera hau era egokian testuinguratu eta salatzeko.**

*"Kolektibo honi aplikatzen zaion espetxe politikak baditu beste osagarri batzuk zuzen eragiten dutenak osasun alorrean, patogenikoa bilakatu arteraino. Horrela, pertsona hauek espetxe politika berezituaren,ondorioz espetxean bizi ohi duten etengabeko,tentsioak ez du batere laguntzen maila honetan.*

*Neurri bereziak ezartzen zaizkie preso hauei, unean uneko giro politiko edo sozialarekin lotuak, eta horrek sufrimendu maila areagotzen du haiengan. Preso hauei ezartzen zaien bizitza erregimenak espazioa eta denboraren arloko aldaketa ugari ekartzen du askotan. Maiztasunezko espetxe edo ziega aldaketak, bizi baldintzen etengabeko aldaketak, gaueko kontaketak, etengabeko miaketak, zeremonia iraingarri eta umiliagarriak (miaketetan bai presoa bai senidea biluztu beharra, kontaketetan egon beharra, ...), leihoetako metalezko xafla zulatuak, etab., honek guztiak, jakina, eragin zuzena du pertsona hauengan. Eta zer esanik ez gaixo egonik neurri berezi horiek (kontrol itogarria, lekualdaketa etengabeak, bakartze sistematikoa, haien aurkako mehatxu eta oldartze sistematizatua, ...) jasan behar dituztenean.*

*Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza da kolektibo honen beste bat. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), kolektibo honen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Izan ere, preso hauek ez dute zertan espetxe arautegia puskatu beharrik zigor mota hau jasotzeko. Are gehiago, ohikoa bilakatu da pertsona hauek bata besteengandik bakartzea bai espetxe zein modulutan.*



*"Goiko aginduak" edota "segurtasun arrazoiak" izaten dira aipatzen diren aitzakiak. Jakina, ezaguna da bakartze luzeak zelako eragina duen pert-sonarengan eta are gehiago kasu hauetan, non bakartzea aste, hilabete edo urteetan luzatzen den. Osasungintzari dagokionez, berriz, maiz suertatzen da presoak nahita-nahiez isolamendura eramatea (zigorren bat betetzeko, erregimen arazoengatik...)*

*Baina badira presoak zeinentzat bereziki kaltegarria izaten den egoera honetan egotea: osasun mentalaren arrazoiarengatik, klaustrofobiarengatik... eta kasu hauetan ere maiz suertatzen dira arazoak: "goiko aginduak" eta "segurtasun arrazoiak" erabiltzen dira aitzakia gisa pertsona hauek bakartzeko. Aipatu beharra dago kasu hauetan espetxeko sendagile eta psikologoek ahalmena dutela bakartze*
*kasu hauek eragozteko, baina gehienetan men egiten diotela espetxeko agintaritzari.*

*Isolamendua pertsonaren nortasuna ezabatzeko eta menperatzeko mekanismo gisa erabiltzen du espetxe instituzioak. Bakardade eta bizitza antsietate sentimendu sakona bultzatzen du, erreferentzia-puntuak*
*desagertzen baitira; ezin ditu gertakizunak aurreikusi (gatazkak, murrizketak, aginduak, ...) edo saihestu (monotonia, ordutegia edo espazioak)".*

Jaiki Hadi Elkartea. Kartzela eta Osasuna dosierra (2013 - 04)

## Preso gaixoak

Larriki gaixo dauden 11 euskal preso politikoen egoera oso larria da eta, egunez egun, okerrera egiten du. Mati Iturralde medikuak apirileko Hilabetekarian argitaratutako "Espetxea eta gaixotasuna" artikuluan zihoen bezala, espetxea zer den dakien edonork gune osasungarria ez dela badaki, baina askatasunik gabe egotearen ondorioz espetxeak ez duela gaixotasuna eragiten, osasun arazoa erraz konpon daitezkeen beste faktore batzuek eragiten dutelako, eta besteak beste, garbitasuna, elikadura, preso pilaketa eta osasun zerbitzu egoki eza aipatu behar dira. Baldintza hauek modu egokian beteko balira, giltzapean egonik ere osasun egoera onean egotea ez litzateke arazoa izango.



Hamarkadetan zehar Espainiako gobernu ezberdinek euskal presoekiko espetxe politika zehatzak burutu dituzte, eta horren ondorioz espetxe erregimenean salbuespen neurriak ziren aldaketa esanguratsuak ezarri ziren, bereziki sakabanaketa eta bakartzea. Sakabanaketa eta bakartzearen bidez saiakera ugari burutu dituzte, baina hala ere orain gaitz larriren bat pairatzen duten euskal presoei askatasuna etengabe ukatu egiten zaie edo presoak ia hilzorian egon behar du Josu Uribetxebarriaren kasuan gertatu zen bezala.

Baina neurri bihozgabe hauek ere ez dira aski izan eta Espainiako gobernuak krudelkeriaz jokatu du berriz ere. Josu Uribetxebarriak etxean preso izan dute eta, gaitz larri baten ondorioz etxean espetxe zigorra modu arinduan betetzen ari zen Ibon Iparragirre espetxeratu dute.

Buru gaitzen bat pairatzen duten euskal presoen egoera ikusirik, espetxean egoteak ez du inolaz ere laguntzen gaitza artatzeko prozesuan, espetxeko egoeraren ondorioz gaitzak okerrerako bidea hartzen duelako.

Hauxe da **Aitzol Gogortza** eta **Txus Martinen** egoera. Biak Basauri eta Zaballako espetxeetan bakarrik dauzkate eta beraien egoera gero eta kezkagarriagoa dela esan beharra dago. Espetxe sistema demokratiko batean honelako neurriak onartezinak direla ongi asko dakite, presoari zigor gehigarriak ezartzea baztertu behar delako eta, esate baterako, presoa ziega ilun batean jartzea edo zigor krudel, umilagarria eta inhumanoak ezartzea, Nazio Batuen erakundeak adierazitakoaren ildotik, presoa zigortzeko guztiz debekatu behar dira.

Osasunaren Nazioarteko Erakundeak adierazitakoaren arabera espetxeko eta kanpoko bizitzaren arteko ezberdintasunak ahalik eta txikiena izan behar du osasun ikuspegi batetik. Eta horren ondorioz segurtasun baldintza zorrotzetan egon beharreko preso kopuruak ere txikiena izan behar du, osasun eskubidearekiko begirunea ziurtatzeko ezinbesteko baldintza delako.

Hala ere, Espainiako gobernuak euskal presoen bizi-baldintzetan hobekuntzarik txikiena ere lortzeko egindako gomendioak behin eta berriz baztertzen ditu, eta egoera hau ezagutarazi eta salatu beharra dago. Senideok eta adiskideok ahalik eta erakunde, talde eta elkarte gehienetan egoera hau ozenki salatu behar dugu.



Gizarteari egoera honen larritasuna jakinarazi behar zaio, gaitz larriren bat pairatzen duten euskal presoak espetxean dauden bitartean, estatuaren krudelkeriak bake egoeratik urrundu eta bidegabekerian bizitzera behartzen gaituelako.

Egoera hain larria izanik, Etxeratek, maiatzean, alarma gorria pizteko erabakia hartu zuen. Publikoki, larriki gaixo dauden preso hauek espetxean mantentzeko dagoen erabakia salatu zuen, mina eta sufrimendua zabaltzeko dagoen erabakiaren aurka egin zuen.

Erabaki politiko bat dago honen guztiaren atzean. Mina eta samina luzatzeko erabaki politikoa. Datuak begiratzea besterik ez dago honen berri izateko. 2008 eta 2011 urteen artean 12 izan ziren espetxeratze arindua lortu zuten euskal preso politikoak. Espetxeratze arindua gaixo zeudelako; larriki gaixo zeudelako eta euren gaixotasuna erarik eta duienean bizitzeko kalean egoteko eskubidea dutelako.

2011 - 2014 urteen artean erabaki politiko bat hartu dela nabaria da. Bake prozesua zein ETAren su etenaren erabakiaren ostean, egoerak okerrera egin du. Larriki gaixo dauden euskal preso politikoek ez dute, ordutik, espetxe arindua lortzeko inongo aukerarik. 14 izan dira 2011 urtetik tramitatu diren askatasunak eta bakarra izan da onartua.

Bestalde, 2014 urteko lehen sei hilabeteetan, gertakari hauek jazo dira:

**Juan Jose Rego Vidal** euskal preso politikoak garuneko isuria izan zuen pasa den otsailaren 23an. 75 urteko preso donostiarrak, bi urte eta erdi daramatza etxean preso zigorra betetzen. Bihotzeko gaixotasun larria du donostiarrak. Rego Vidalek lau egun eman zituen Donostia Ospitalean ingresatua. Preso politikoari botika eta erabateko atsedena hartzeko agindu zioten medikuek. Juan Jose Regoren egoera bereziki larria da. 1939an jaio zen preso gaixoa, 2012.urtetik zigorra etxean betetzen ari da, kontrol neurri zorrotz eta ordutegi berezien pean. Egun, goizeko 10.00etatik 15.00tara soilik atera daiteke etxetik. Asteartero Martuteneko espetxera sinatzera joan beharra du, eta bertan hankan lotuta daraman kontrol-gailua berrikusten diote.



**Ibon Iparragirre**: Rego Vidalen kasuan bezala, Ibon Iparragirre ondarrutarra, etxean preso aurkitzen zen larriki gaixo dagoelako. Iragan martxoaren 7an, Ertzaintzak Iparragirre atxilotu zuen, ordutik espetxeratua aurkitzen delarik. Espetxeratu bakarrik ez, HIESA C estadioan duen ondarrutarra dispertsatu eta isolatu egin dute. Egun, Navalcarneroko espetxean –Madril- aurkitzen da sorterritik 500 kilometrotara. Bere kasua bereziki larria deritzogu. Izan ere, bere gaixotasun motak zainketa berezia eta inolako kutsadura jasotzeko arriskua saihestuko duen giro batean bizitzea eskatzen du. Baina espetxean dute berriz, kutsadura mota guztiak biltzen dituen tokian (espetxetako gainpopulazioaren arazoa, higiene eza, gaixotasun infekziosoa duten pertsonen presentzia...) preseski. Ibonen kasuan, bere azken froga medikuen emaitzek defentsen beherakada ikaragarri nabarmendu dute; hau da, egoerarik hoberena edozein gaixotasun hilgarriz kutsatzeko eta okerrena bere gaixotasunari aurre egiteko. Une honetan bere aurreko egoera penalaren inguruko balizko itzulera ari da tramitatzen, baina hilabeteak pasa ahala espetxeratua jarraitzen du.

**Ibon Fernandez de Iradi**: Ibonek gaixotasun degeneratibo bereziki larria pairatzen du: Esklerosi Anizkoitza ( nerbio-sistema zentralaren gaixotasun larri, sendaezin, kroniko eta progresiboa), 2013ko urtarrilean diagnostikatua. Epaileak aurten izendatutako bi mediku adituk bat egin dute Ibonen gaixotasunaren larritasuna ebaluatzerakoan eta egoera honetan espetxean egotea guztiz kaltegarri dela ebatzi dute. Txosten honen aurrean, epaileak onartu zuzen ekainean Ibonen kondena etetea, baina administrazio-penal motako arazoek ezinezkoa egin dute oraindik Ibon kalean egotea. Izan ere, Ibonek neurri administratibo baten pean dago: estatu frantsesean bizitzeko debekua. Eta afera hau argitu arte espetxean segitu beharko du.

**VenturaTomé**: Venturaren kasua okertze progresibo baten kasua dugu. Izan ere, 2013aren hasieran prostatako minbizia diagnostikatu zioten eta, ondorioz, erradioterapia sesioak hartu behar izan zituen. Baina 2014ko hasieran Birika bateko minbizi bat topatu zioten; ondorioz, lobektomia bat egin behar izan diote (birikako lobuluaren erauzketa) eta une honetan kimioterapia tratamenduaren pean dago. Bestalde, Venturaren osasun egoeraren larritasuna ikusirik egindako askatasun eskaera guztiak debekatuak izan dira. Eta Iruñeko Nafarroako Ospitalera bidaltzeko eskaerak ere emaitza bera izan du. Kasu honetan, badago pisuzko arrazoi bat. Izan ere, prostatako minbizia tratatze-



ko erradioterapia tratamendua baldintza onartezinetan burutu izan dira Murciako Ospitalean: eskuak loturik eta polizien probokazioak ospitalerako bidean, eskuak loturik tratamenduaren unean, poliziaren presentzia sesioetan... Mertxe Chivite: Reau sud francilen eko espetxean dagoen preso naparrari obarioetan ebakuntza egin zioten. Tratua egokia izan zen.

Joseba Erostegi: 50 polipo topatu zizkioten antzuolako euskal preso politikoari kolonoskopia bat egiterakoan. Ciudad Realeko Unibertsitate Ospitaleko medikuek ebakuntza berehala egitea erabaki zuten orduan. Ebakuntza ongi joan zen.

## Larriki gaixo dauden euskal preso politikoen zerrenda:

**Josetxo Arizkuren Ruiz:** kardiopatia iskemiko larria.

**Garikoitz Arruarte Santa Cruz:** Espondilitis ankilosantea

**Inmaculada Berriozabal Bernas:** Pluripatologia: Hipertentsio larria, iraupen luzeko psoriasi artropatia, diabetesa, asma bronkiala, bizkarrezurreko afektazio larria...

**Iñaki Etxeberria Martin:** Miopia Magnoa, erretina hemorragia, ikusmen zorroztasunaren galera larria

**Ibon Fernandez Iradi:** Esklerosi anizkoitza.

**Aitzol Gogorza Otaegi:** Obsesio-Konpultsio Nahasmena.

**Ibon Iparragirre Burgoa:** VIH C-III estadioko infekzioa, neurologia afektazio larriarekin.

**Jose Ramon Lopez de Abetxuko:** Bradikardia sistematikoa. Fibrilazio artikularra.

**Jesus Mª Martin Hernando:** Eskizofrenia paranoidea



# 5.

# ERASO FISIKOAK

Gure senide eta lagunek bizi baldintza gogorrak jasan behar izaten dituzte espetxean, eta horrez gain, funtzionarioen aldetik jasan behar izaten dituzten irainak, probokazioak eta erasoak ugariak izaten dira. Jarrera oldarkorrak eta bortitzak jasan behar izaten dituzte, tentsio une handiak bizi dituzte, eta zenbait kasutan jarrera hauek presoek jasaten dituzten eraso fisikoetan islatzen dira.

Ez hori bakarrik, presoak etengabe horrelako egoeretan bizitzeak izugarrizko ondorioak fisiko zein psikologikoak ditu gure senide eta lagunengan. Aurtengo lehenengo sei hilabetetan 4 euskal preso politikoek 4 eraso jasan dituzte:

**Pariseko «Palais de Justice»:** Urtarrilaren 8an Raul Aduna euskal preso politikoa bortizki erasotu zuten Pariseko Epaitegiaren kalabozoetan. Adunak ziega preso arrunt batekin partekatzeari uko egin zion eta, protesta egiteko modu pasibo gisa, lurrean eseri eta, funtzionarioen arduradunarengana eraman zezatela eskatu zien. Tentsio une horien ondorioz, Raul Adunak ez du erasoan gertatutakoa zehazki gogoratzen eta konortea galdu ote zuen ere ez daki ziur. Hala eta guztiz ere, hanka batetik helduta korridorean barrena arrastaka eraman zutela, paparretik helduta «panpin baten gisan» altxarazi zutela eta nola jakin gabe lurrean bukatu zuela gogoratzen du Adunak. Era berean, buruan eta atzealdean kolpeak ere jaso zituen. Funtzionarien arduraduna ziegara joan zitzaion ondoren, eta espetxezainak kolpatu izana egotzi zion preso gasteiztarrari. Disziplina batzordeak 20 egunez mitard-ean egoteko zigorra ezarri zioten, baina ez zituen bete behar izan.

**Liancourt:** Urtarrilaren 2an, Mikel Oroz presoak funtzionario baten erasoa jasan zuen etxera deitu ondoren patiora zihoala. Gertaera kamara batek grabatu bazuen ere, espetxeak kamara apurtuta dagoela argudiatu du. Funtzionarioa ezaguna da espetxean preso gehiagorekin liskarrak izan dituelako. Medikuak Mikel Oroz artatu zuen. Azterketaren emaitza: kontraktura lepoan eta traumatismoak besoetan eta sorbaldan.



**Murtzia II:** Espetxean dagoen Oier Andueza euskal preso politikoa jipoitu egin dute. Atzo goizean, kiroldegira jaitsi eta futbol baloia falta zelako liskarra izan zuen funtzionarioekin. Anduezak orduan, plaka zenbakia emateko eskatu zion funtzionario. Honek ukatu egin zuen eta, gainera, biluzteko agindu zion durangarrari.
Anduezak orduan, amantala eskatu zion eta, berriz, ezetza jaso zuen. Bat batean, lau funtzionariok, preso durangarra erasotu, esposatu eta, isolamendura eraman zuten.

**Pariseko «Palais de Justice»:** Kepa Arkauz arrasateko euskal preso politikoari eraso egin zioten Parisko Justizia Jauregiko gendarmeek iragan uztailaren 16an. Le Vert epaileak deituta entzutegira eraman zuten euskal herritarra galdeketa egiteko. Bertara iristean funtzionarioek probokazioekin hasi zitzaizkion, "ez nengoela nire etxean, bertan beste euskaldunik ez zegoela" - horrelako aipamenak eginez; Igor Uriarte bertan egon arren.
Preso arrunta batekin zelda partekatu behar zuela esan ziotenean, arrasatearrak, ukatu egin zuen. Beraiekin hitz egin eta bakarrik geldituko zela aipatzean zeldan sartu zen baina, momentu hori probestu zuten preso arrunta ere zelda berdinera sartzeko. Jabetzean kanporantz bultzaka hasi zen eta lau funtzionarioren artean heldu zuten orduan. Funtzionarioetako betek besoa lepotik bueltan pasatu eta gogor estutzen hasi zitzaion, ito nahian bezala. Bitartean besteek eskuetatik heldu eta lurrera botatzen saiatu ziren. Lauen artean helduta ere zeldatik irtetea lortu eta atetik 5 m aldendu zen. Lurrera erortzen ez zela ikusirik, bertan askatu eta tonu gogorrean elkarrizketa bat izan zuten.
Erabakiz aldatuko ez zuela jabeturik, bakarrik utzi zuten zeldan. Oihu eta zaratak entzunda goiko pasiloko ziega batean zegoen Igor Uriarte deika hasi zitzaion. Orduan, komunikazioa eteteko, elkarrekin ez hitz egiteko, beste galeria batera mugitu zuten.
Erasoaren ondorioz lepoaren atzealdean atzamarkada bat eta ubeldura txiki bat izan ditu.

## Beste motako erasoa

Maiatzaren 27an, Auzitegi Nazionalak aske utzi zuen Harriet Agirre Egiako bizilaguna. Kalean hiru egun egin ostean, Espainiako Poliziak berriz atxilotu zuen 30ean, Agirrek auzi bat oraindik zabalik zuelakoan. Fiskaltzak ostera, gezurtatu egin zuen hori, eta biharamunean eman zuen aske uzteko agindua. Gauzak horrela, Harriet Agirre askatzeko eskatu zion Espainiako Auzitegi Nazionalak Espainiako Poliziari.



